# HARRIDURAZKO PERPAUSAK

1. **Orokorrak**

- BAI + ADJEKTIBOA / ADBERBIO + (…-LA)

  Bai ederra!
  Bai ederra dela! Bai dela ederra!

- ZEIN – ADJEKTIBOA / ADBERBIOA – (…-N)

  Zein polita
  Benetan aspergarria pelikula!

- ERAKUSLEA + IZEN SINTAGMA + (erlatiboa aposizioan …-NA/K)

  Hau hotza!
  Hau hotza egiten duena!

- GALDETZAILEA + IZEN SINTAGMA + ( …-N)

  (A zer-)Nolako eguraldia egiten duen!
  Nola etorri zaren!

2. **Ezjakintasuna**

- AUSKALO, BATEK DAKI, NORK JAKIN + zehar galdera

  Auskalo zer esan duen!
  Batek daki zein asmorekin datozen!

3. **Erakutsi**

- HONA, HORRA, HARA + (zehar galdera)

  Horra nor datorren!
  Hara zer esan duen!

4. **Nahia**

- ETORKIZUNA + AHAL

  Itoko ahal haiz!

- NAHIAGO NUKE + …BALITZ

  Nahiago genuke hilko balira!

- EA …-EN

  Ea oraingoan ondo ateratzen zaigun!

5. **Ustekabea**

- GALDETZAILEA + ETA + IZENA, IZENORDEA + ADITZA (jokatu gabe)

  Nori eta zuri gertatu behar!
  Nork eta Pellok!

- GALDETZAILEA + …-KO + ETA

  Nor ikusiko Parisen eta Jon ikusi genuen!

**6. Eskerrak**

- ESKERRAK + …-EN, …-ENA, …-ELA, …-ENARI

  Eskerrak etorri zaren!

- … EZ …—NEAN

  Burua apurtu ez duzunean!

**7. Erronka**

- BAIETZ, EZETZ + ADITZA (jokatu gabe)

  Baietz (ezetz) lehendabizikoan atera!

- EGINGO NUKE + …-ELA

  Egingo nuke gaur ere berandu etorriko dela!

**8. Baietza edo ezetza**

- HORIXE + …-ELA, -ENA

  Horixe joango garela!

- EZEZKO PERPAUSA + BA(DA) (baiezko zentzuan bakarrik)

  Kontatuko ez diot, ba!

- BA-…, BA

  Ba nengoen, ba!

- EZTA … ERE

  Ezta pentsatu ere!

**9. Gaitzespena**

- -T(Z)EA ERE

  Hori sinistea ere!

**10. Ironia**

- KONTRAKOA ESAN

  Asko zenuen niri deitzea!
  Merke dago, gero!

**11. Haserrea**

- ZER … ETA … ONDO(KO)

  Zer baimen eta baimen ondo!

- ZER ARRAIO, NOLA DEMONTRE

  Zer arraio esan nahi duzu horrekin!
  Nola demontre dakizu zuk hori!